“MUSIKA ETA SORKUNTZAZ PRESO ETA IHESLARIAK”

# ATERA





IBON MUÑOA / 1959, EIBAR.

CENTRO PENITENCIARIO
CTRA. SEVILLA-MADRID, KM. 391
APDO. 479
14.015 ALCOLEA (CÓRDOBA)
ATXILOTZE DATA:
2000KO URRIAREN 17AN

ITZIAR MORENO MARTINEZ
1982, BILBO

FRESNES - MAISON D'ARRÊT
3, ALLÉE DES THUYAS
94.261 FRESNES CÉDEX
ATXILOTZE DATA: 2011KO APIRILAK 10





JON BIENZOBAS ARRETXE
1969, BILBO

M.C. SAINT MAUR, BEL-AIR
36.255 SAINT MAUR CEDEX
FRANTZIA
ATXILOTZE DATA:
1999KO IRAILAK 30

JULEN ATXURRA "POTOTO"
1959, LEKEITIO

PUERTO I - CENTRO PENITENCIARIO
APDO. 555
11.500 PUERTO DE SANTA MARÍA (CÁDIZ)
ATXILOTZE DATA: 1996KO UZTAILAK 23



# PRESO OHIA NOIZ ARTE

PRESO EGON DENAREN GOGOA KARTZELARA ITZULTZEN DELA, IDATZI ZUEN HANDIK IHES EGIN ZUEN POETAK. DUELA URTE GUTXI KALERATU ZEN BESTE BATEK, BERRIZ, KONTATZEN ZIDAN TRENEAN ZIHOALA IKUSI ZUELA ARMIARMA, ETA HARI GALDETU ZIOLA, EA NOIZ ARTE PRESO OHI.

KARTZELAREN ITZALAK BADITU BI LOTURA PRESO OHIONTZAT: HAN UTZI DITUGUN KIDEEKIKO LOTURA DA BATA, ETA KARTZELARI ETA KOMISALDEGIARI LARRIKI KATEATZEN GAITUENA BESTEA; KONDENA HORI DARAMAGU ITZAL HORREK UKITU GAITUENOK.

PRESO OHIAREN PAUSOA ETA IBILERA URDURIAK IZAN OHI DIRELA ERE ESAN ZUEN POETAK. EGIA DA KALEAN GABILTZANEAN IRUDITZEN ZAIGULA JENDE GUZTIAK BEGIRATU EGITEN DIGULA, DENAK ZELATAN DAUZKAGULA.
BIZITZA ERDIA KARTZELAN IGARO ONDOREN ETXERATU ETA HURRENGO GOIZEAN, AURRETIK EZAGUTZEN EZ NUEN HIRI EDO HERRI HANDI HONETAKO KALEETAN ZEHAR ABIATU NINTZENEAN, BI-HIRU ALDIZ FIIIUU FIIIUU TXISTU EGIN ZIDAN BATEN BATEK. LOTSAGATIK EDO, SEMEARI EZER AIPATU GABE SAIATU NINTZEN INGURURA BEGIRATU ETA TXISTUKA ARI ZITZAIDANA –POLIZIAREN BAT DUDARIK GABE- LOKALIZATZEN, ZER AURPEGI OTE ZUEN IKUSTEKO, GUTXIENEZ. EZ NUEN LORTU INOR IKUSTERIK TXISTUKA ARI ZITZAIDANIK. KALE KANTOIREN BATEN-EDO OSTENDUTA, ZELATAN ARI ZITZAIDALA JAKIN NEZAN EGIN ZIDAN TXISTU, BAINA EZ ZUEN NAHI IKUS NEZAN.

ONDORENGO EGUNETAN BERDIN EGIN DIDATE, ETXETIK IRTEN ETA BEREHALA, BETI INGURU BERDINEAN, ETA NIRE AHALEGIN GUZTIAK ALFERRIKAKOAK IZAN DIRA: EZ DUT LORTU POLIZIA ZELATARIA LOKALIZATZEA, BERARI BEGIRATU ETA KEINUREN BAT EGINEZ-EDO, “ZER DEMONTRE NAHI DUK?” ADIERAZTEKO GUTXIENEZ. EGUNAK JOAN AHALA URDURIAGO JARRI NAU ZELATARI MADARIKATUAK, NIRE PRESO OHI KONTZIENTZIA LARRIAGO EGINEZ. BAINA ETXEKOEI EZ DIET EZER ESAN NAHI IZAN: NAHIKOA ETA GEHIEGI JASAN DUTE URTEOTAN GUREGATIK, ETA ORAIN, GU ETXERATUTA ATSEDEN APUR BAT HARTZEKO GARAIA DUTENEAN, ZER HASI BEHAR NATZAIE BESTE BURUHAUSTE BAT SORTZEN?

PRESO OHIAREN IZU-PENTSAMENDUAREN LOTURA, KOMISALDEGIRA ETA HANDIK KARTZELARA ITZULTZEN DA, ZELATAN DABILZKIGULA OHARTZEAN BATIPAT. BESTE LOTURA GOGO-IZPIRITUTIK LUZATZEN ZAIGUN ARIADNAREN HARIA DA, KARTZELAKO ATEA KANPORANTZ PASA GENUEN MOMENTUTIK LUZATZEN DENA GOAZEN LEKURA GOAZELA, ETA BARRUAN UTZI DITUGUN LAGUN ETA KIDEENGANA ATXIKITA DAGOENA; AZKEN PRESOAK BAIZIK ASKA EZIN DEZAKEEN HARIA.

PRESO OHI GARELA ETA ZELATAN DABILZKIGULA JAKINARAZTEN DIGUTEN ZANTZUAK DESAGERTUKO DIRA DENBORAREKIN; ZUHURTZIA ETA PATXADA APUR BATEN KONTUA BAIZIK EZ DA SEGURU ASKO. EGUNA BAINO LEHEN ESNATUTA, SEKRETA ZELATARIAK TXISTU EGITEN DIDAN INGURUAN JARRI NAIZ GAUR, PORTALE BATEN OSTENDUTA, BERAK ORDEZ NEUK ZELATATU ETA HARRAPATZEKO USTE OSOAN. GOIZA AURRERA, ASPERTU NAIZ, EZ DELA AGERTZEN IKUSITA. “SOMATU EGIN NAU, INOLA ERE” PENTSATU ETA ETXERA ABIATU NAIZ, INGURURA BEGIRA, ETA, ABIATZEAZ BAT, AURREKO ETXE BATEKO BIGARREN PISUKO BALKOIAN KAIOLAN DAGOEN LOROAK EGIN DIT TXISTU, FIIIUU FIIIUU, AURREKO EGUNETAN BEZALAXE.

JOKIN URAIN. ORERETA, 2014.

# KIDE BATI MIRESPENEZ

PARIS ETA MADRILEN
GOTORKI HESIAK,
SAKON SUSTRAITU DIRA
HERRAREN HAZIAK,
KARTZELAN DAGITZATE
SARRI DEMASIAK,
GEURETZAT BIDEGABE
ZIEGA BILUZIAK.

ORO UMILIAGARRI
DIRA MIAKETAK,
GOITIK AGINDUTAKO
OHIKO ARAKETAK,
EZAGUTZEN DITUZTE
ONGI ARIKETAK,
GURI LARRUGORRITAN
JARTZEKO LANKETAK.

SUSMO BAT ERABILI
ZUTEN KAKAZTEKO,
GURE EGUNEROKO
OHITURAK HAUSTEKO,
ZIEGETAN ONDASUNAK
BALDAR NAHASTEKO,
GUZTION LOTSARIAK
ZIKIN IKUSTEKO.

ATZOTIK ZAUDE KIDE
ZEHARO SUTUTA,
BIZIPOZA ZIZUTEN
UTZI TXIKITUTA,
DENAK SENTITU GARA
BORTITZ ZANPATUTA,
BILUZTE KONTUEKIN
GAUDE NAZKATUTA.

POTROAK ALTXATZEKO
HIRU MAKURDURA,
AGINDU ZIZKIZUTEN
HURA ASALDURA,
ZU ZEU IZATEA ZEN
HAN ZURE ARDURA,
BURUARI ZENION
JANTZI ESTALDURA.

OHEKO SOMIERREAN
ZEUNDEN ESTUTUTA,
KARTZELA ZAINAK ZURE
KONTRA OLDARTUTA,
BANANDU ZIZKIZUTEN
HANKAK BEHARTUTA,
HARROKI PUZTU ZIREN
IRRITSA LORTUTA.

ISOLATU ZINTUZTEN,
GORDIN MINTASUNA,
UKATU ETA GERO
AGINDU LIZUNA,
GARESTI ORDAINTZEN DA
HEMEN DUINTASUNA,
KIDEAK DAKARKIZU
NARO POZTASUNA.

HURBIL DUGU EGUNA
KENTZEKO KATEAK,
URRUN GERA DAITEZEN
KARTZELEN KALTEAK,
ZABALDUKO DITUGU
ZUEKIN ATEAK,
AGURTUKO ALAIKI
LAZTANEN URTEAK.



POTOTO

## JOAN ZAIZKIGUN KIDE GAIXOEI

# MAITASUNEZ

KARTZELAK UTZI ZAITU
ZURBIL, HEBAINDUA,
LARRI GAIXOTU ZARA
ZABILTZA HILDUA,
MAITE DUZU BIZITZA
HERRI ZAPALDUA,
UXATU NAHI ZENUKE
GOGOTIK GANDUA,
ONDUTA IKUSTEKO
ABERRI MINDUA.

KARTZELAK ZUREKIKO
ARRETA ESKASA,
MINA ARINDU DUZU
SARRI ZURE KASA,
GAIXOEN EGOERA
MAKUR ETA BASA,
SENDAGILE BATZUEN
JARRERA JOLASA,
OSASUN ARLOA DA
ERABAT NARRASA.

LURRARI ESKAINITA
TINKO GAZTAROA,
URRUN IZAN ZENUEN
GOXO ABAROA,
SAREAN JAUSI ZINEN
KALTETU GEROA,
PAIRATZEN ARI ZARA
MENDEKU EROA,
SENTITU NAHI ZENUKE
ETXEKO BEROA.

ESPETXEAN GAIXORIK
BIKOITZA ZIGORRA,
GAUA MINEZ IGARO
ZINEZ DA GOGORRA,
ZURE HITZ JARIOA
DAGO LAR AGORRA,
JUSTIZIA ZUREKIN
ITSU ETA GORRA,
ESPERANTZEN ZELAIAN
DIHARDU TXINGORRA.

ASKE UTZI ZAITUZTE
HUTSAK ESTALTZEKO,
HERRITARREN OIHUAK
ZERBAIT ISILTZEKO,
AURKITZEN ZAREN ARREN
HERREN IBILTZEKO,
IRITSI ZARA GARAIZ
SENDIA GURTZEKO,
PRESOEN LAGUNEI
MAITEZ ESKERTZEKO.

IRIMIRIAK GAITU
BUSTI BARRA-BARRA,
ZURE ILUNALDEAN
ARI DU NEGARRA,
ETORRIKO DA GALANT
GURE OSTADARRA,
HISTURA BIHUR DADIN
BIHAR IRRIFARRA,
AMNISTIARANTZ DOAZ
TAUPADEN IFARRA.



# HASERRETUTA

STEPHAN HESSEL ZAHAR GAZTE BAT
JENDARTEA ZIRIKATZEN,
UTOPIAREN BIDE LUZEAN
LAÑO SARTZEKO ESKATZEN,
POLITIKARI USTEL GUZTIEN
TRAPU ZIKINAK ASTINTZEN,
POBRETASUNA HAZI DELAKO
BANKARIAK MAISEATZEN.

HASERRE ZAITEZ, HARAN BAT DUTE
INDUSMAKINEK URRATU,
GARAPENAREN ARRAZOIPEAN
BASERRIAK IZO RRATU,
AMA-LURRARI KOTXEAK SARRI
GEROA DIO ZERRATU,
GUTXI BATZUEN HANDINAHIAK DU
EKOLOGIA ZURRATU.

ETORRI ZARA HASERRETUTA
UKABILAK ESTUTUTA,
LANGABEZIAK UTZI DIZKIZU
ESPERANTZAK TXIKITUTA,
BAKARRIK BAINO HOBE ZENUKE
BORROKATU ELKARTUTA,
KAPITALISTEN OLDARREN KONTRA
KALEAK HARTU BATUTA

SUTUTA DAUDE BIHOTZ ONBERAK
GOSEAZ DAGO AFRIKA,
HANDIK KONTSUMO OPAROARI
ARITZEN DIRA KIRIKA,
LAGUNDU BAINO NONAHI DITUGU
HESIAK JASO KORRIKA,
EUROPAN BIZI NAHI DUTELAKO
DATOZ IA IGERIKA.

SUMIN DAKUSAT GAZAKO AMA
MIN DU BERE ERRAIETAN,
ETXEKO UME ZORAGARRIAK
DAUTZA ZURBIL ODOLETAN,
GUDAZALEEK DARABILTZATE
ARMAK HERRI TXIROETAN,
GUDEI ESKER BIKOIZTEN DIRA
KAPITALAK BANKUETAN.

HIRATU GARA ELE TXIKIAK
ARI DIRELAKO GALTZEN,
GURE MUNDUKO EDERTASUNA
DABILTZA NAHITA LURPETZEN,
INPERIOEN HEGEMONIAK
KULTURA DU INPOSATZEN,
GAU ETA EGUN DABIL HERRIEN
ANIZTASUNA ZAPALTZEN.

“ENGAIA ZAITEZ!”, OIHUKATU DU
LIBURUA GORATUTA,
HESSELEN DEIAK ASPALDI DAUZKA
GOGOAK INGURATUTA,
ALDARRI HORI HAIZEAN DABIL
MUGARRIAK GAINDITUTA,
MUNDUAN ONGI BIZIKO GARA
ONDASUNAK BANATUTA.

ENPARANTZETAN DABILTZA TINKO
HASERRE DAUDEN JENDEAK,
KARTZELAN OZEN ENTZUN DITUGU
AURKEZTUTAKO GALDEAK,
EUSKAL HERRIA BUSTI DEZALA
ELKARTASUN UHOLDEAK,
GURE LURRALDE HAU ASKATZEKO
LERROTU ZUEN MOLDEAK.





# EUSKAL HERRIKO EITEA

SAGARRA BEZAIN MAMITSUA
ELKARTASUNAREN ZENTZUA,
MAITASUNA BEZAIN HEZEA
ASKATASUNAREN HAIZEA,
KRABELINA BEZAIN GORRIA
KLASERIK GABEKO HERRIA,
ILUNKERA BEZAIN MOREA
BERDINTASUNAREN LOREA,
ESPERANTZA BEZAIN BERDEA
EUSKAL PRESOAREN OLDEA

ZAILA DEN ARREN SINISTEA
ZABALDUKO DUGU ATEA,
GARATUKO DA OSTARTEA
EKIAREN IZPIZ BETEA,
LORTU DUGULAKO EUSTEA
HAUTSIKO DA GAURKO KATEA,
EUSKALTZALEA ETA GAZTEA
IZANGO DU EDER EITEA,
HOLA SUMATZEN DUT MAITEA
ELKARTUKO GAREN URTEA.



# HIRU DESIRA ETA SENTIMENDU BAT NEGU GORRIAN

NEGUKO ILUNABARREAN
IPAR HAIZEAREN MENPEAN
HOTZ DAGI PRESOAREN ZIEGAN,
BERDIN TXIROAREN TXABOLAN,
ETA ZARPAILAREN ZOKOAN,
UZKURTUTA DAGITE AMETS
LAR SUFRITZEN ARI DIRENAK.
AUKERA BAT NAHI DU PRESOAK

HESIA BIHUR DADIN ATE,
JUSTIZIA NAHI DU TXIROAK
TXABOLA BIHUR DADIN ETXE,
ERRUKIA NAHI DU ZARPAILAK
KARTOIA BIHUR DADIN OHE.
GAZTE SENTIMENTALAK DIO
“BUKA DADILA GABEZIA
ONURA HAZ DADIN MUNDUAN”,

UDABERRIAN ENTZUN NAHI DU
TXIOLARI TXANTXANGORRIA,
ESPERANTZAREN IRRINTZIA.



# GURE LURRETAN INKISIDOREEN MENPE

ZENBAT SUPREFET TRATULARI,
ZENBAT ESTATU ORDEZKARI,
GURE LURRETAN MEHATXARI,
JAKOBINO AMORRATUAK,
ZENTRALISTA INPOSATUAK,
INKISIDORE MUTURTUAK,
EUREN XEDEA ZANPAKETA,
EUSKAL SENAREN BIRRINKETA,
ELE TXIKIEN BAZTERKETA,
LAGA GAITZATELA BAKEAN,
JARDUN EZ DEZAGUN TXOKEAN
ASKATASUNAREN ESKEAN,
MAITE DUGU DEMOKRAZIA,
GAITZESTEN HAUEN MALEZIA,
DIRELAKO BORTXEN HAZIA,
JOAN DAITEZELA HEMENDIK AT,
BIZI GAITEZEN ZAZPIAK BAT,
EUSKARAZ LIBRE HARAT-HONAT

# ESPETXEA(N) TXIKITZEN


















VIGON BI BEGI
FLEURYN BESTE BI
GILTZURRIN BAT OURENSEN,
BESTEA CACERESEN,
ERDI USTELTZEN...

AZAZKAL BAT SORIAN,
ORPOA SEGOVIAN
BELAUN BAT MARTUTENEN,
TA BIRIKIAK TERUELEN
HAIN APARTE, ETA NORK DAKI
NOIZ ARTE

ANATOMIA DISPERTSATU BAT
ESPERANTZAREN MAPA BEZALA,
TOLES GAITEZEN ELKARRENGANA
IZAN GAITEZEN BAT.

PERPINYANEN ZORTZI AGIN
OCAÑAN BEKAINAK BERRIZ
ESTAMU HUTS BAT ETA AZKEN
BOTILA GORA SEVILLA!

ZENBAT GORPUTZ ZATI
HAUTSI DAUDEN HERRERAN
ZENBAT FRESNESEN,
ETA ZENBAT ZUERAN
ZATOZ NERE BIHOTZA,
BATU HEZURRAK ETA GOAZEN HEGAN.

ANATOMIA DISPERTSATU BAT
ESPERANTZAREN MAPA BEZALA,
TOLES GAITEZEN ELKARRENGANA
IZAN GAITEZEN BAT.

SOTO DEL REAL, SEVILLA,
FLEURY, ALICANTE, PARIS,
ZENBAT ZAURI
NAVALCARNERO, ALCALA,
PUERTO ZENBAT ZAURI
LYON,ALGECIRAS, BASAURI,
ZENBAT ZAURI

IZAN GAITEZAN,
TOLES GAITEZAN
GAITEZAN BAT

ANATOMIA DISPERTSATU BAT
ESPERANTZAREN MAPA BEZALA,
TOLES GAITEZEN ELKARRENGANA
IZAN GAITEZEN BAT.

AMETS ARZALLUS

# DISKAREN KREDITUAK: 

Ander Hurtado de Saratxo: Bateria, txalaparta eta perkusioak. Kike Mora: Baxua eta Kontrabaxua. Izaro Otaegi: Trikitixa eta Ahotsak. Eriz Perez: Gitarra elektrikoa, akustikoa, ukelelea eta ahotsak. Produkzio musikala eta abestien moldaketak: Kike Mora eta Eriz Perez. Grabaketa, nahasketa eta masterizazioa: Kike Mora. Estudioa: KMT estudioa (Bilbo-Bizkaia). Baterien grabaketa: Jabi Palacios. Esker bereziak: Iñaki Plaza eta Xixo Yantani.

# ANATOMIA ETA ASKATASUNA

**Letra:** Amets Arzallus
**Musika eta konponketak:** Haimar Arejita
**Ahotsak:** Eñaut Elorrieta eta Gari
**Gitarrak:** Haimar Arejita
**Baxua:** Igor Arzanegi
**Bateria eta perkusioa:** Jon Fresko
**Saxo baritonoa eta tenorra:** Ander Ertzilla
**Tronpeta:** L. Esteban Valcarcel
**Soinu teknikaria eta masteringa:** Iñigo Etxebarrieta
**Ekoizpena:** Haimar Arejita
**Grabaketa, nahasketa eta masterizazioa:** Muxik on, (Mungia, Bizkaia) Bideoklipa
**Bideoklipa: Irudia,** Markel Urrutia, Hodei Ensunza eta Oier Plaza
**Diseinua:** Ibon U

Bihotz bihotzez eskertu nahi ditugu proiektu honetan sinetsi eta bakoitzak bere arlotik zer edo zer eskaini dituztenak. Abestietan kolaboratu duten abeslariak, Trikizioko musikariak abestien birmoldaketetan egin duzuen lan apartagatik, Haimar Arejitari proiektu honetan hartu duen inplikazio mailagatik, bere alboan izan dituen musikari eta teknikariei, Amets Arzallusi bere hitzengatik, Oier Plazari burua apurtzearren irudiengatik eta Jokin Uraini bere hitzak gurekin partekatzearren. Ziurrenik baten bat aipatzea ahazten zaigu baina denei gure eskerrik sentituena. Eta nola ez, barroteen artetik etorri diren sorkuntza lanengaitik. Mertxi Ibon, Itziar, Karaka eta Poto. Baita zeuri ere, esku artean duzulako iheslariak etxera ekarri eta euskal preso politikoak kalera ATERAko dituen proiektua.

# MUSIKA ETA SORKUNTZAZ

1/ ITZIARREN SEMEA (PANTXOA ETA PEIO)
KOLABORATZAILEA: GONTZAL MENDIBIL

2/ PISTOLA ALUAN (SORKUN)
KOLABORATZAILEA: MARIA RIVERO (HUTSA, SIROKA)

3/ ZUENTZAT (DEABRUAK TEILATUETAN)
KOLABORATZAILEA: JSANG (GOVERNORS)

4/ 564 (HERTZAINAK)
KOLABORATZAILEA: IZARO (TRIKIZIO)

5/ KARTZELAKO GUTUNA (URGABE)
KOLABORATZAILEA: MAIALEN ERROTABEHERE (BRIGANTHYA)

6/ 10 URTE GARTZELAN (EH SUKARRA)
KOLABORATZAILEA: MIKEL MORENO (KAUTA)

7/ MALEN (KEN ZAZPI)
KOLABORATZAILEA: PELLO REPARAZ (VENDETTA)

8/ AMODIOZKO KANTA (NEGU GORRIAK)
KOLABORATZAILEA: ITSASO GUTIERREZ (ON)

9/ POSTA ZAHARRA (ESNE ZOPAK)
KOLABORATZAILEA: IÑIGO ETXEZARRETA (EN TOL SARMIENTO)

10/ GUREKIN (ETZAKIT)
KOLABORATZAILEAK: ZURIÑE ETA FRAN (HESIAN)

11/ GAU ILUNA AMAITU DA (SU TA GAR)
KOLABORATZAILEA: ROBERTO MOSO (ZARAMA)

12/ AMNISTIAREN DEMA (ANJE DUHALDE)
KOLABORATZAILEA: ERIZ (TRIKIZIO)

+ ANATOMIA ETA ASKATASUNA BIDEOKLIPA

# PRESO ETA IHESLARIAK

HITZAURREA /
JOKIN URAIN

BERTSO PAPERAK /
IBON MUÑOA

1 KIDE BATI MIRESPENEZ
2 JOAN ZAIZKIGUN KIDE GAIXOEI MAITASUNEZ
3 HASERRETUTA
4 EUSKAL HERRIKO EITEA
5 HIRU DESIRA ETA SENTIMENDU BAT NEGU GORRIAN
6 GURE LURRETAN INKISIDOREEN MENPE

KOMIKIA / ESPETXEA(N) TXIKITZEN
ITZIAR MORENO

ANATOMIA ETA ASKATASUNA /
AMETS ARZALLUS

IRUDIAK /
JULEN ATXURRA
ETA J. RAMON KARASATORRE

ATERA



ataramiñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN LITERATURA KOADERNOAK